Contents:-

The Prophet Jonah in 7 Dialects.



1861-1863.

Contents:-

The Prophet Jonah in
7 Dialects.



1861–1863.

# LA PROFECÍA DE JONÁS

TRADUCIDA AL VASCUENCE,

## DIALECTO NAVARRO DEL VALLE DE BAZTAN,

SEGUN AHORA COMUNMENTE SE HABLA

EN LA VILLA DE ELIZONDO.

POR

DON BRUNO ECHENIQUE.




LONDRES. 1862.

# JONASEN PROFECIA.

## I. CAP.

ETA 'torri cen Yaunaïn itza Amatiïn seme Jonasi, ciolaïc:

2 Goiti zaite, eta zoaci Ninive ciudade aun-
dira, eta an predica zazu: igan delacotz aren
malicia nere aitzinera.

3 Eta goititu cen Jonas, Yaunaïn presentziatic
igues 'iteco, eta yautsi cen Jopera, eta arpatu
zuen untzi bat Tarsisera zoayena: eta 'man zuen
bere pasaya saria, eta artan sartu cen equin ba-
tean goateco Tarsisera Yaunaïn ganic igues.

4 Baño Yaunac igorri zuen aice bortitz bat itsasora: eta goratu cen tormenta aundi bat itsasoan, eta untzia puscatzeco arriscuan zagon.

5 Eta mariñelac beldurtu ciren, eta bacotchac deadarca otoiztu zuen bere Yangoicoa: eta botatu cituzten itsasora untzian zacarzcaten puscac, equen cargaz arintzea gatic: baño Jonas, yautsia untziaïn zolara, an lo zagon tranquilqui.

6 Eta urbildu cen aren gana pilotoa, eta erran cion: ¿Nola zaude zu olaco lo pisuaïquin? goiti zaite, deit zazu zure Yangoicoa, venturaz nai izaten badu Yincoac gutaz contu 'in, eta ez gaitzin galdu.

7 Eta bacotchac erran zuen bere lagunaï: Zatozte, eta tira 'zagun chortea, eta yaquin 'zagun cergatic guertatu zaicun macur au.

Eta tiratu zuten chortea: eta erori cen chortea Jonasen gañera.

8 Eta erran cioten: Erran diezaguzu ¿cergatic guertatu zaicu macur au? ¿cer oficio 'izu? ¿cein da zure tierra, ta nora zoaci? ¿edo cein pueblotacoa zara zu?

9 Eta erran zaben: Ni naiz hebreoa, eta beldur naiz ceruco Yangoico Yaunaï, itsasoa ta lurra 'in cituena.

10 Eta guizonac beldurtu ciren aunitz, eta erran cioten: ¿Bada cergatic 'in duzu oï? (ecen uste zuten guizonec Yaunaïn aurpeguitic igues 'iten zuela, ceren berac ala 'man zaben entenditzera.)

11 Eta erran cioten: ¿Cer 'inen dugu zutaz, eta itsasoa ezti daquigun? ceren bazoayen itsasoa goratuz, eta asertuz.

12 Eta erran zaben: Ar nazazue, eta bota

nazazue itsasora, eta itsasoa eztituco zaitzue: ongui daquidalacotz nere gatic 'torri dela zuen gañera tormenta aundi au.

13 Eta arraunatzen zuten guizonec legorreco aldera itzultzeco, eta etzezaqueten: ceren itsasoa bazoayen iganez, eta equen contra asertuz.

14 Eta deadarca asi ciren Yaunaï, eta erran zuten: Otoizten zaitugu, Yauna, ez gaitecila galdu guizon unen biciaïn gatic, eta etzazula erorraci gure gañera odol inocentea: ceren zuc, Yauna, 'in duzu, nai izan duzun bezala.

15 Eta artu zuten Jonas, eta botatu zuten itsasora: eta guelditu cen bela itsasoaïn furrinda.

16 Eta artu zuten guizonec beldur aundi bat Yaunaï, eta esqueñi citiozten Yaunaï victimac, eta 'in cituzten votuac.

## II. Cap.

ETA bazaucan Yaunac prest arrañ aundi bat, Jonas iretsi zuena: eta egon cen Jonas arrañaïn sabelean iru egun, ta iru gauez.

2 Eta 'in zuen Jonasec arrañaïn sabeletic otoitz bere Yangoico Yaunaï.

3 Eta erran zuen: Nere naigabetan deitu nuen Yauna, eta aïtu ninduen: sepulturaïn barnetic oyu 'in nuen, eta aïtu cinuen nere voza.

4 Eta botatu ninduzun itsasoaïn erdira uraïn

zolaraño, eta ur biciac inguratu ninduen: zure remolina guciac, eta zure oladac pasatu ciren nere gañetic.

5 Eta erran nuen nic: Botatua izan naiz zure beguien vistatic: baño oñic berriz 'cusico 'ut zure templu saindua.

6 Inguratu ninduten urec arimaraño: leceac inguratu ninduen, osinac estali zuen nere burua.

7 Yautsi nitzen mendien zañetaraño: legorreco morrollec etsi ninduten seculaco: baño zuc guardatuco 'izu galtzetic nere bicia, nere Yinco Yauna.

8 Nere arima quechatzen celaïc nere barnean, oroitu nitzen Yaunaz: zure gana allega dayen nere otoitza zure templu sainduaï.

9 Gauza vanoac inutilqui guardatzen 'tuztenec, uzte' 'ute aren misericordia.

10 Baño nic laudorioco vozaïquin esqueñico datzut zuri sacrificioa: pagatuco 'ut Yaunaï salvacioaïndaco esqueñi diodan gucia.

11 Eta Yaunac manatu cion arrañaï: eta goitica botatu zuen Jonas legorrera.

## III. Cap.

ETA 'torri cen berriz Yaunaïn itza Jonasi, ciolaïc:

2 Goiti zaite, eta zoaci Ninive ciudade aundira: eta 'in zazu an, nic erten datzudan predicua.

3 Eta goititu cen Jonas, eta partitu cen Ninivera Yaunaïn itzaïn arabera: eta Ninive cen ciudade aundi bat iru egunen bidecoa.

4 Eta asi cen Jonas ciudadean sartzen, an egun batez ibiliïc: eta oyuca erran zuen:

Oñic berroguei egun, eta izaïn da Ninive arrasatua.

5 Eta ninivarrec Yangoicoaïn baitan sinetsi zuten: eta publicatu zuten barua, eta veztitu ciren zacuz aundienetic ttipieneraňocoan.

6 Eta allegatu cen solasa Niniveco erregueïn ganaño: eta goititu cen bere tronutic, eta biluchi cen bere veztidotic, eta veztitu cen zacuz, eta yarri cen autsaïn gañean.

7 Eta 'in zuen oyu, eta erran zuen Niniven erregueïn eta ministro printzipalen ordenaz: Guizonec, eta aciendec, eta idiec, eta ardiec eztezatela deusere yastatu: ez bazcaïc yan, ez ere uric edan.

8 Eta guizonec, eta aciendec yauntz detzatela zacuac, eta esca dezatela Yaunaï firmequi, eta itzul dayela bacotcha bere bide macurretic, eta equen escuetan den gaichtaqueriatic.

9 ¿Eta norc daqui itzulico ote den Yangoicoa, eta barcatuco ote dacun: eta eztituco ote den bere coleraïn furrindatic, eta ez garela galduco?

10 Eta 'cusi cituen Yincoac equen obrac, nola aldaratu ciren beren bide gaichtotic: eta izan zuen Yangoicoac urricalmendua 'inen zabela mintzatu cen gaitzaïn gañean, eta etzuen 'in.

## IV. Cap.

ETA Jonasec izan zuen sentimentu aundi bat, eta asertu cen:

2 Eta Yaunaï otoitz 'in zuen, eta erran: Otoizten zaitut, Yauna, ¿ezta au, nere tierran oñic nitzelaïc, beldur nitzena guertatuco cela? unen gatic aitzinatu nitzen Tarsisera igues 'itera. Daquidalacotz zu zarela Yangoico bat biotz onecoa eta misericordiosoa, sufritua eta urricalmendu aundicoa, eta becatuac barcatzen 'tutzuna.

*We certify that only 250 copies of this work have been printed, of which one is with red borders.*

STRANGEWAYS & WALDEN,
(late G. Barclay,)
28 Castle Street, Leicester Square.

# LA PROPHÉTIE DE JONAS

TRADUITE EN

DIALECTE BASQUE DE LA BASSE NAVARRE,

TEL QU'IL EST COMMUNÉMENT PARLÉ DANS
LA VALLÉE DE CIZE.

PAR

M. L'ABBÉ CASENAVE.




LONDRES. 1862.

# JONASEN PROFEZIA.

---

## I. Kap.

JAUNAK adiäzi ziïn bere hitza Jonas Amathiïn semiaï, eta erran ziakozun:
2 Jeiki haï, eta haïl Ninibako hiri handiät,
eta han pedeika zak: zeën haïn gachtakeria
alchatu baita ene aintzineät.
3 Abiatu zuün beäz Jonas, Tharsiseät Jaunaïn bichtatik ihes 'itia 'tik. Joppeät heldu zenian, hatzeman ziïn Tharsiseät zuan untzi bat: eta haät juaiteko Jaunaïn bichtatik, pasaya paätuïk, sarthu zuün untzi hartan.

4 Jaunak haätik itsasoät haize handi bat igorri ziïn: eta tempesta bat handia jalgi zuün itsasuan, nun untzia porroskatzeko hirriskian baizen.

5 Ordian maïñelak beldurtu zitzun, eta othoiztu zizien beren Jinkua: geö untziaïn ahintzia 'tik, hartako kargak aurthiki zitzien itsasoät. Jonas haätik deutsi zuün untziaïn behereät, ba-eta han lokhartu harria bezala.

6 Hola zolaïk juan ziziakozun untziaïn gidairia, eta erten diakozu: Nola zaude hola luan sarthuïk? Jeiki zite, eta othoitz 'azu zure Jinkua, heldu 'ada gutaz ohituko 'uzu, eta ezkitzi hilaäziko.

7 Batzuk bester erran zizien: Zaurte, thiä dezaün chortia, jakiteko nor dela kausa jin zaün nahigabe hau. Thiätu zizien beäz: eta Jonas zuün eöri.

8 Erran ziakozien ordian: Jakinaäz ezaüzu zertaïk heldu zaün lanjer hau. Zer da zure ofiziua? Nungo zira? Noät ari zira? Azkentsun, zer jendetaïk atheätzen zira?

9 Hebrotarra nuzu, ihardesten diezu, eta zeria eta lurra 'in 'tien Jinko Jauna zerbitzatzen dizit.

10 Hori aitziaïkin oro laztatzen 'tzu, eta erten diakozie: Zer aizan zira? (alainan ere haïn beäïn ahotik jakin zizien Jaunaïn bichtatik ihes zaïlela.)

11 Erran ziakozien beäz: Zer 'inen dauzuü itsasua baä dakïun amokatik? zeën hur-kolpiak mulkatzen, eta handitzen zitzun.

12 Ihardesten diezu: Har, eta aurthik nezazie itsasoät, eta itsasua geldituko zauzie: ezik baziaïzut ni nizala kasu ukan duziela tempesta handi hau.

13 Maïñelak haätik entseätzen zitzun leihorreät heldu nahiz, bainan debalde zuün: zeën-eta itsasua baizaïlan, eta hura buru-gainetik baizizen juaiten.

14 Oihu 'in zizien beäz Jaunaï, eta erran ziakozien: Othoizten zituü, Jauna, gizon hunen heriotzia eztaïn izan gu hilaäzteko suyeta, eta eztaïn ichur gure gaineät odol inozenta: zeën, Jauna, zuk nahi 'uzun bezala 'in baita gauza hau.

15 Hori erran zuteneko, hartu eta aurthiki zizien Jonas itsasoät: eta behala itsasua apazatuïk jarri zuün bere furiatik.

16 Ordian beldur handi batek hartu zitzin Jaunaïndako, biktimak ofeitu, eta botiak 'in ziazkotzien.

## II. Kap.

BAINAN Jinkuak han ziaukezun prest arrain handi bat Jonasen iësteko: eta Jonas egon zuün haïn sabelian hiru egun, eta hiru gauez.

2 Othoiztu ziïn bere Jinko Jauna arrainaïn barnetik.

3 Erran ziïn: Jaunaï oihu 'in dizit ene penaïk handienian, eta intzun nizi: hobiaïn zolatik oihu 'in dizit, eta aitu 'uzu ene botza.

4 Aurthiki nuzu itsasuaïn erdiät huraïn zolaäno, eta hurak nizi inguätu: zure hur-mendoi,

eta turrusta guziak igaän ziazkiatzu buriaïn
gainetik.

5 Ordian erran dizit: Zure begien aintzine-
tik igorri nuzu: halere berriz ikusiko 'izit zure
templo seindia.

6 Hurek ezarri nizie azken estremitatian:
leizia alde otaïk nizin, osinak estali ziïn ene
buria.

7 Deutsi nuzu mendien erruak bezain be-
hera: lurra zerraäilu, sekulakotz hetsia nin-
tzun: bainan, ene Jinko Jauna, ene bizia etzu
utziko andeätzeä.

8 Ene arima hestura borthitzenian zelaïk, zu-
taz, Jauna, ohitu nuzu: ene othoitza zure 'anat,
eta zure templo seindiaïn 'nat alcha daïla.

9 Auferretan banitatiak beïratzen 'tuztenek,
galtzen dizie heëndako den miserikordia.

10 Bainan nik ahoz laudatzen zituälaïk ofei-

tuko dauzkitzut: Jaunaï errendatuko 'tzit nihaun salbatziaïndako 'in 'tuän botu guziak.

11 Ordian Jaunak manatu ziïn arrainaï kampoät eman zezan Jonas: eta leihorreät botatu ziïn.

## III. Kap.

BERRIZ-ERE Jauna mintzatu zuün Jonasi, erten zakolaïk:

2 Jeiki haï, eta haïl oäi berian Ninibako hiri handiät: eta han errazkik nik erraiten dezteätanak.

3 Jonas beäz behala abiatu zuün, eta juan Ninibaät Jaunaïn maniaïn aäbera: Niniba zuün hiri handi bat zointan hiru egunen bidia baizen buru-bat-etaïk besteä juaiteko.

4 Jonas hasi zuün hirian sartzen eta iïli egun

bat osoïk. Oihu 'ten ziïn: Ono berrogoi egun, eta Niniba emphoildia izaïn duzu.

5 Ninibatarrek Jinkuaïn hitza sinhetsi zizien, eta barurtzia manatu: hasiïk handienetik ttipieneäno, oro zakhuz estaliïk jarri zitzun.

6 Berri hori intzun zien bezain laster, Ninibako errege jeiki bere tronutik, khendu bere arropak bere soinetik, zakhu batez estali zuün, eta jarri hautsaïn gainian.

7 Oihu 'naäzi, eta kridaäzi ziïn erregeïn eta printzen phartez, erten zeëlaïk: Gizonek, zamariek, idiek, eta hazinda-churiek eztezatela deus ahuan ezar: eztitela bazka, ez-eta edanaäz.

8 Jendiak, eta animaliak zakhuz estaliak izan ditela, eta 'in-ahala Jaunaï oihu 'in dezatela, bakhotchak utz dezala bere bide gachtua, eta haïn eskiak zikintzen dien inikitatia.

9 Nok taki Jinkua eztela itzuliko gure 'anat

guri barkhatzeko, eta bere koleraïn borthizta-
suna eztiela aphazaäziko gure esparñiatzeko?

10 Peetchatu zitzin beäz Jinkuak heïn obrak,
zeën combertitu baiziren jalgiz beren bide gach-
tuetatik: eta Jinkuak hetaz pietate izanik, baätu
zuün igorri gabe delibeätu zitien gaitsak, eta
utzi zitzin deus 'in gabe.

## IV. KAP.

JONAS ordian desolatu zuün handizki, ba-eta koleän sarthu:

2 Jaunaï mintzo zelaïk, erran ziïn: Errazu othoi, Jauna, heä 'eztenez gerthatu nik erten niena, neure herrian nintzan demboran? hortako delibeätu nizin ihes juaitia Tharsiseät. Baziaïzut eïki Jinko bat zïela amultsia, huna, pazienta, miserikordia handi batez bethia, eta barkhatzen zula bekhatiak.

3 Oäi beäz, Jauna, atheäz 'aäzu othoi hatsa

gorphutzetik: zeën hobio baita enetako hiltzia bizitzia bano.

4 Bainan Jaunak erran ziakozun: Uste 'uka arrazoin dukala holakatzeko?

5 Hortan jalgi zuün Jonas hiritik, eta jarri hirian iruzkiko aldetik: han 'in ziïn itzalgune bat, zoinaïn-pian egon baizen ikhusteko hiriaï zer gertatuko zizakon.

6 Jaunak arte hartan sorraäzi ziïn huntz-osto handi bat, zoina alchatu baizen Jonasen buria bano goro, hari itzal 'iteko, eta haïn sokorritzeko (ezik beruak ahuntzen ziïn). Plazerrik handienaïkin beäz ikhusten ziïn Jonasek huntz-osto-ondo hura.

7 Bainan bihamun goizian argi-phuntako Jinkuak igorri ziïn har bat, zoinak chilatuïk, eiharraäzi baizien ondua.

8 Noiz-eta-ere jeiki baizen iruzkia, Jaunak

alchaäzi ziïn haize bero bat khaldatzen ziena. Iruzkiak buria erreïk, Jonas hatsankatuïk ziozun. Hiltzia desïatzen zielaïk bere baithan, erran ziïn: Hobio 'uzu enetako hiltzia bizitzia bano.

9 Ordian Jaunak erran ziakozun Jonasi: Uste 'uka arrazoin dukala koleätzeko huntz-osto-ondo hau dela kasu? Ba', ihardesten diakozu, untsa arrazoin baitut koleätzeko hiltzia desïatzekoäno.

10 Jaunak haätik erran ziakozun: Hik pena 'uk galduz huntz-osto-ondo bat deusik gosta ez 'aukanaz, zoina handitu baita hire laguntza gabe, sorthu dena gau batez, eta beste ats batez eihartu.

11 Eta nik eztuta barkhatuko Niniba hiri handiaï, zointan baitira sei eta hogoi mila arima bano gehio, eztakitenak zoin duten ez eskuña ez ezkerra, eta kabala hanitz?

# LA PROPHÉTIE DE JONAS

TRADUITE EN

# BASQUE LABOURDIN

PAR LE

CAP. DUVOISIN.




LONDRES. 1863.

# JONASEN PROFEZIA.

---

## I. KAP.

JAUNAREN hitza Jonasi, Amathiren semeari ilkhi zitzayoena, zerralarik:

2 Jaiki zaite eta zoaz Ninibako hiri handira,
eta erantzun zazu han, ene aitzinera igan dela
hango tzarkeria.

3 Eta Jonas jaiki zen, Jaunaren aitzinetik
Tharsisera ihes-egiteko. Jopera jautsi zen eta
atzeman zuen Tharsisera zihoan untzi bat; eman

zuen bidayako behar zen dirua, eta untzian sarthu zen, hartan zirenekin Tharsisera goateko Jaunaren ihes.

4 Jaunak ordean itsasora igorri zuen haize handi bat, eta phesia gaitza egin zen itsasoan, eta lehertzeko zorian zabilan untzia.

5 Itsasturuak izituak ziren; zein bere jainkoari deihadarka zauden, eta itsasora arthiki zituzten untzian ziren puskak, hekietaz izan zadien arindua; Jonas berriz, untzi-barnera jautsia zen, eta lo gogor batean zagoen.

6 Eta lemazaina hurbildu zitzayon eta erran zioen: Zertan zaude lo hortan? Jaiki zaite eta dei-egiozu zure Jainkoari, hean zure Jainkoa orhoituko den gutaz, eta gal ez gaitezen.

7 Eta han zirenek batak bertzeari erran zuten: Zatozte eta arthik detzagun zorteak, eta jakin dezagun zertako dathorkigun zorigaitz

hau. Eta arthiki zituzten zorteak, eta zortea Jonasen gainera erori zen.

8 Eta erran zioten: Ager dizaguk zer ariaz den zorigaitz hau gure gainean. Zer ofizio duk? Nongoa haiz eta norat hoa? edo zein jendakitarik haiz?

9 Jonasek ihardetsi zioten: Hebrearra naiz ni, eta itsasoa eta leihorra egin dituen Jainko Jaun zerukoaren beldurrean bizi naiz.

10 Eta izialdura handia lothu zitzayoten gizon hekiei, eta erran zioten Jonasi: Zertako egin duk hori? (ezen berak erranik bazakiten, Jaunaren aitzinetik ihes zihoala.)

11 Eta erran zioten: Zer eginen derayagu, itsasoa bara dadien gure ganik? Ezen goitituz eta hantuz zihoan itsasoa.

12 Eta Jonasek ihardetsi zuen: Har nezazue eta arthik itsasora, eta itsasoa baraturen

da zuen ganik; nik badakit alabainan phesia gaitz hau ene gatik ethorri dela zuen gainera.

13 Eta gizonak arrau-indarka hari ziren, leihorrera bihurtu nahiz, bainan etziren nausitzen, itsasoa goitituz eta hantuz zihoalakoz.

14 Eta Jaunari oihu-egin eta erran zioten: Othoi, Jauna, ez begedi gal gizon hunen heriotzearen ariaz, eta ez bezazu gure gain ezar odol hobengabea; zeren Jauna, nahi duzun bezala egiten baituzu.

15 Eta hartu zuten Jonas eta itsasora arthiki zuten, eta itsasoa jabaldu zen bere irakiduratik.

16 Eta gizon hekiek beldur handia hartu zuten Jaunarentzat; eta bitimak imolatu ziozkaten Jaunari, eta botuak egin zituzten.

## II. KAP.

ETA Jaunak han ezarri zuen arrain handi bat
Jonasen iresteko; eta Jonas arrainaren
sabelean egotu zen hirur gau-egunez.
2 Eta bere Jainko Jaunari othoitz-egin zioen
arrainaren sabeletik,
3 Eta erran zioen: Ene hesturako lekhutik
Jaunari egin diot deihadar, eta entzun nau; ho-
biaren ondotik oihu-egin dut, eta aditu duzu ene
mintzoa.
4 Arthiki nauzu lezera, itsasoaren barnera,

eta urek inguratu naute; zure tirain eta uhinak
oro iragan zaizkit gainetik.
5 Eta nik erran dut: Iraizia naiz zure begien
aitzinetik; berriz ikhusiren dut halere zure tem-
plo saindua.
6 Urek inguratu naute, bizia khentzeko hei-
neraino; lezeak birundan hartu nau, itsasoak
estali darot burua.
7 Mendien behereko erroetara jautsi naiz;
lurreko hersgailuek giltzatu naute bethiko; eta
zuk, ene Jainko Jauna, galtzetik begiraturen
duzu ene bizia.
8 Ene arima hestutua zenean ene baithan,
zutaz orhoitu naiz, Jauna; hel zadien ene othoi-
tza zure gana, zure templo saindura.
9 Hutsalkeria alfer batzuei jarraikitzen dire-
nek ukho-egiten diote beren alderako urrikal-
menduari.

10 Bainan nik laudoriozko kantuekin imolaturen darozkitzut bitimak; eta ene salbatzeko, Jaunari bihurturen diozkat egin diozkadan botu guziak.

11 Eta Jaunak arrainari erran, eta arrainak goiti-egin zuen Jonas leihorrera.

## III. KAP.

ETA bigarren aldiko Jonasi ilkhi zitzayoen
Jaunaren hitza, zerralarik:
2 Jaiki zaite, eta zoaz Ninibako hiri handira,
eta han erantzun zazu nik erraten darotzudan
erantzukia.
3 Eta jaiki zen Jonas, eta, Jaunaren hitzaren
arabera, Ninibara goan zen; eta Niniba hain
zen hiri handia, non baitzuen hirur egunen bi-
dea.
4 Eta Jonasek, sartzen abiatu zenetik, egin

zuen egun baten bidea, eta oihu-egiten zuen eta erraten: Oraino berrogoi egun, eta hiria chahutua izanen da.

5 Eta Ninibarrek sinhetsi zuten Jainkoa baithan; erantzun zuten barura, eta handienetik ttipieneraino zakhuz jauntzi ziren guziak.

6 Eta berria heldu izan zitzayoen Ninibako erregeri, eta jaiki zen bere tronutik, eta arthiki zituen bere soinekoak, eta jauntzi zuen zakhu bat, eta jarri zen hautsaren erdian.

7 Eta Niniban oihu-egin eta erantzun zuten erregeren eta buruzagien manamenduz, erranez: Gizonek, zaldiek, idiek, ardiek ez bezate den-gutiena dasta; ez beitez alha, eta ez bezate urik edan.

8 Zakhuz estal beitez gizonak eta aziendak; beren indar guziaz deihadar-egin biozote Jaunari; eta batbedera bihur bedi bere bide

gaichtotik eta eskuen gainean duen tzarkeriatik.

9 Nork daki hean ez den itzuliko Jainkoa, eta hean ez duen barkhatuko; hean ez den bihurko bere hasarrearen irakiduratik, eta hala ez baikare galduko?

10 Eta Jainkoak ikhusi zituen hekien egintzak, itzuli zirela beren bide tzarretik; eta Jainkoa urrikaldu zen hekiei eginen ziotela erran zuen gaizkiaren gainean, eta etzioten egin.

## IV. Kap.

ETA Jonas hestutu zen hestura handi batez, eta minkhaiztu zen.

2 Eta othoitz-egin zioen Jaunari, eta erran: Othoi, Jauna, ez othe da hau ene solasa, ene herrian oraino egoten nintzenekoa? aria hortaz aitzindu naiz Tharsisera ihes goatera. Badakit ezen zu zarela Jainko barkhatiar, urrikalmendutsu, jasankor, urrikalpen handitakoa, eta gaizkia barkhatzen duzuna.

3 Eta orai, Jauna, athera zazu othoi ene arima ene baitharik; zeren enetzat heriotzea bizitzea baino hobea baita.

4 Eta Jaunak erran zioen: Uste duzu aria onez hasarretzen zaren?

5 Eta Jonas Ninibatik ilkhi zen eta jarri hiritik iguzki-alderat; eta beretzat egin zuen han itzalpe bat, eta jarria zagoen haren azpian itzalean, ikhusi arteo zer gerthaturen zitzayoen hiriari.

6 Eta Jainko Jaunak sortarazi zuen huntz-ondo bat, eta igan zen Jonasen buru gainera, itzala izan zadien haren buruaren gainean, eta geriza zezan hura, beroaz khechatua zelakoz; eta bozkario handiaz boztu zen Jonas huntz-ondoaren ariaz.

7 Eta biharamun argi-hastean Jainkoak igorri zuen har bat, eta jo zuen huntz-ondoa, eta ihartu zen.

8 Eta iguzkia ilkhi zenean, Jaunak manatu zuen haize bero eta erregarri bat; eta iguzkiak

jo zuen Jonasen burua, eta saphak ithotzen zuen Jonas; eta bere biziari galdatu zioen hilik utz zezan, eta erran zuen: Bizitzea baino hobe nuke hiltzea.

9 Eta Jaunak erran zioen Jonasi: Uste duzu ongi samurtzen zaren huntz-ondoaren ariaz? Eta ihardetsi zuen: Aria dut samurtzeko heriotzeraino.

10 Eta Jaunak erran zioen: Minkhaitz zare huntz-ondo baten ariaz, zeinaren ethorrarazteko ez baitzare behartu, eta zeinaren handiarazten ez baitzare haritu; zeina gau batez sorthu eta bertzean hil baita;

11 Eta nik ez othe diot barkhaturen Ninibako hiri handiari, zeintan baitire ehun eta hogoi mila gizon baino gehiago, beren eskuina eta ezkerra ezagutzen ez dituztenak, eta azienda elemenia bat?

*We certify that only 250 copies of this work have been printed, of which one is with red borders.*

STRANGEWAYS & WALDEN,
28 Castle Street, Leicester Square.

# LA PROFEZIA DI GIONA

VOLGARIZZATA IN

DIALETTO SARDO CAGLIARITANO

DALL'

AVV. FEDERIGO ABIS.




LONDRA. 1861.

# SA PROFEZIA DE GIONAS.

## Cap. I.

E SU fueddu de su Signori s'est fattu intendiri a Gionas fillu de Amati, narendi:
2 Pesa, e bai a Ninive çittadi manna, e
predica innì: poita sa malizia sua est alzada
in facci a mei.
3 E si fiat moviu Gionas, po si ndi fuiri a
Tarsis de s' aspettu de su Signori, e fiat calau
a Gioppe, e hiat incontrau unu bastimentu,
ch' andàt a Tarsis: e hiat donau su nolu suu,

e fiat calau in su bastimentu po si nd' andai cun issus a Tarsis de s' aspettu de su Signori.

4 Su Signori però hiat mandau unu grandu bentu in mari: e si fiat fatta una grandu tempestadi in mari, e su bastimentu perigulàt de si sfracassai.

5 E timiant is marineris, e zerrianta is ominis a su Deus insoru: e hianta ghettau is mercanzias, chi fiant in su bastimentu, a mari, a talis chi s' allebiessit de issas, e Gionas si nci fiat calau a s' internu de su bastimentu, e dormiat a sonnu grai.

6 E s' accostat a issu su patronu, e ddi narat: E poita tui ti lassas opprimiri de su sonnu? pesa, e invoca su Deus tuu, si po fortuna s' arregordit Deus de nosu, e no morgiaus.

7 E naràt unu cumpangiu a s' aturu: Bes-

sei, e tireus a sorti, e scipiaus, poita cust' istrossa nos acontessit. E hianta tirau a sorti: e fiat arruta sa sorti asuba de Gionas.

8 E hianta nau a issu: Naranosì, po cali motivu siat arruta a nosaterus cust' istrossa: cali est s' arti tua? de cali paisu ses, e aundi andas? o puru de cali populu ses tui?

9 E narat a issus: Deu seu Ebreu, e deu timu su Signori Deus de su celu, ch' hat fattu su mari, e sa terra.

10 E is marineris hianta tentu unu grandu timori, e hianta nau a issu: Poita has fattu custu? (poita is ominis conosciant, chi fuiat de sa presenzia de su Signori, poita si ddus hiat manifestau.)

11 E hianta nau a issu: Ita depeus fai a tui, e su mari s' hat assussegai cun nosu? poita su mari cresciat, e s' avolotàt.

12 E narat a issus: Pigaimì, e ghettaimì a mari, e s' hat assussegai su mari cun bosaterus: poita deu sciu, chi po causa mia custa tempesta manna est bennia asuba de bosaterus.

13 E is marineris arremanta po torrai a terra, e no podiant: poita su mari cresciat, e s' avolotàt asuba de issus.

14 E hianta zerriau a su Signori, e naranta: Signori, po caridadi, no morgiaus po s' anima de cust' omini, e no dongas asuba nosta su sanguni de un' innoçenti: poita tui, Signori, coment' has boffiu, has fattu.

15 E afferrant a Gionas, e ddu ghettant a mari: e si fiat placau su mari de su furori suu.

16 E is ominis hianta timiu su Signori cun grandu paura, e hiant offertu sacrifizius a su Signori, e fattu votus.

## CAP. II.

E HIAT preparau su Signori unu grandu pisci po ch' ingurtessit a Gionas: e fiat Gionas in brenti de su pisci tres dìs, e tres nottis.

2 E pregàt Gionas a su Signori Deus suu de brenti de su pisci.

3 E naràt: Hapu zerriau de sa tribulazioni mia a su Signori, e m' hat ascurtau: de brenti de s' inferru hapu zerriau, e has ascurtau sa boxi mia.

4 E mi nci has ghettau in su profundu, in su coru de su mari, e s' arriu m' hat ingiriau: totu is profundoris tuus, e is undas tuas sunt arrutas asuba de mei.

5 E deu naramu: Seu repudiau de sa presenzia de is ogus tuus: ma atera borta hap' a biri su templu santu tuu.

6 Is aquas m' hant ingiriau finzas a s' anima: s' abissu m' hat inserrau, su mari hat cobertu sa conca mia.

7 Seu calau in is basciuras de is montis: is punteddus de sa terra m' hant inserrau in eternu: e has a sullevai de sa corruzioni sa vida mia, Signori Deus miu.

8 Mentras s' anima mia fiat in angustias, mi seu arregordau de su Signori: po chi audit a tui s' orazioni mia, a su templu santu tuu.

9 Cuddus, chi custodiant is vanidadis de badas, abbandònanta sa misericordia sua.

10 Deu però cun boxi de alabanza hap' a sacrificai a tui: totu is cosas, ch' hapu fattu votu hap' a donai po sa saludi a su Signori.

11 E su Signori hiat cumandau a su pisci: e nd' hiat vomitau a Gionas in terra.

## Cap. III.

E SU fueddu de su Signori s' est fattu in-
tendiri un' atera borta a Gionas, narendi:
2 Pesa, e bai a Ninive çittadi manna: e
predica innì totu cuddu, chi deu nau a tui.
3 E si fiat moviu Gionas, e fiat andau a
Ninive segundu su fueddu de su Signori: e
Ninive fiat una çittadi manna de tres dìs de
camminu.
4 E Gionas fiat cumenzau a intrai in çittadi
ind' ũna dì de camminu: e hiat zerriau, e hiat

